EGILEA
**Hodei Ijurko Irotz**
1986
Iruñea

2008ko martxoaren 9an atxilotua.
Soto del Real (Madril), Teixeiro (A Coruña) eta A Lama (Pontevedra) espetxeetan giltzapetuta egon ondoren, 2018ko irailaren 20an aske gelditu zen.

**www.literaturakoadernoak.org**

 **COPYLEFT**
Publikazio hau copyleft erakoa da. Beraz, bere edukiak zabaldu, aipatu eta hitzez hitz kopiatu daitezke, osorik zein zatika, edozein medio erabiliz eta edozein helburu lortzeko, ohar hau mantentzen eta jatorria aipatzen den bitartean.

LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL

BOLALUMA BIRBLARRA PINTZEL JARRERA HARTUZ hitzekin margotzen eta margolan olerkiak sortzen

Iradimena

Esku artean daukazuen liburuan dauden olerkiei, nire kaieretan geratu direnak gehitu eta espetxean sortu nuen egunkari "olerkitu" baten poema kopurua aterako zaizue. "Egunkari olerkitua" nire zigorraren azken txanpan osatu nuen, zehazki 2016/07/21-tik 2018/09/20-ra eta azken bi urtetan burua lepo gainean mantentzen lagundu zidan, horretaz zalantzarik ez izan.

Espetxean 10 urte 6 hilabete eta 20 egun igaro nituen (2008/03/11-2018/09/20), horietako gehienak Galiziako espetxe batean pasa nituen, Pontevedrako probintzian, A Lama Lama espetxean. Hortik liburu honen izena "BASATZA", "A Lama" galegoz basatza esan nahi duelako. Azpi izenburuak ez du azalpen handiegirik behar testuingurua kontuan hartuta.

Esan dizuet olerki liburu hau "egunkari olerkitu" batetatik ateratako poemekin idatzia dagoela. Hain zuzen, idatzitako orri kopurua ikusita erokeri hutsa iruditu zitzaidan den denak argitaratzea. Zuekin nire parean dudan beirazko edalontziak daukan ura bezain gardena izanez, dena era naturalago batean burutzea hautatu nuen. Azken finean sarrera labur baina intentsu honen ostean irakurriko dituzuen olerkiak ez dira batere bereziak, zuetako edozeinen garunetik denboraren poderioz pasa ziren, diren eta pasako diren pentsamendu ezberdinak izan daitezke, tankera guzietakoak, onak, txarrak, alaiak, baldarrak, bihurriak,... Ni, idazle izatera behartu ninduten eta pentsamendu sailkatu hauek nire modura, nire estiloarekin olerki bilakatu eta irudikatuak dira. Txantxetan esan dezaket esku artean duzuen liburua Espainiako gobernuaren opari bat dela - kar,kar,kar-. Bromak albo batera utziz, liburu

hau askatasun garrasi bat da, niretzat ohore handia da berau zuen begien aurrean egotea eta baita ere nik sortu nuena bizirik dagoela jakitea.

Liburua sei atal ezberdinetan eta aldi berean oso berdinetan banatzea erabaki dut, liburuaren hariak zentzu bat hartu dezan eta zuentzat, irakurleentzat, irakurtzeko errazago izateko.

Esan dizuedan moduan olerki liburu honek ez du ospea helburu, bere jomuga zeharo ezberdina da, liburu honen funtsa, irakurleak momentu atsegin bat igarotzea da. Ohartzea gure kaskotik jaiotzen den edozein pentsamendu gauzatzeko gaitasuna dugun bitartean, gu geu garela geure buruen mugatzaile.

Besterik gabe, bolaluma lurreratuko dut, nire kideez agurtuko naiz eta gaurko hegaldiari etenaldia emanen diot. Ez eten erabatekoa (ez okertu irakurle maiteok), gutxien espero duzuenean berriro ere nirekin hegaka egongo zaretenez.

**Hodei Ijurko Irotz**

# Agur

Bala zorroan whiskia edaten.............................................mozkortua.
Pistolan kalamua erretzen......................................................itsutua.
Herioarekin txorta jotzen.....................................................larrutua.

Bizialdia burniz erailtzen,
azken garraldia bizitzen,
bizi fisikoa uzteko prestatzen,
behingoz dena bolborategira bidaltzen.
Nere gorpua huts geratzen,
nire arima askatzen.

# Aitortzen

Angola
odola
dariola
eta
niri
bost
axola,
Afrika
  urrun
  dago
eta
ni
Europan
eroso
nago.

# Aldakor

kazetaritza:
Albistea hartu ondoren
kirurgia estetiko prozedura batetik pasarazi
eta
albistea berritu ostean
gizartean utzi arazi.

Kazetaritza armatua:
Grafitozko baladun pistolak
eta
berunezko minadun arkatzak
demokraziaren ispilu jokoaren ardatzak.

# Amugizakia

Gizaki
zopa
izateko
jaioa.

# Arazoa ekidin

Ez amorratu
arerioari aurpegira begiratu,
giharrak lasaitu
eta haserrea baretu.

Arnasa espetxeratu
pentsamendu atsegin bat aukeratu,
indarkeria barneratu
eta sentipenak orekatu.

Arnasa kaleratu
presioaz libratu,
bide batez amorrua kaiolatu
eta kontrarioari irribarre bat oparitu.

# Arriskua

Pistolak mekanismo konplexua dauka
eta erabiltzea oso erraza da.
Pistolak erabilpen erraza dauka
eta bere mekanismoa oso konplexua da.

Gizakiak zerebro konplexua dauka
eta manipulatzea oso erraza da.
Gizakiak manipulatzea azalpen erraza dauka
eta bere zerebroa oso konplexua da.

Konplexua erraza da
eta
erraza konplexua da.
Eta hori arriskutsua da.

## Auzitegi Nazionala

Berdin dio, errugabea bazara
erruduna izango zara.

# Azken mehatxua

Berari, zure bortxatzaileari
begietara begiratu,
eskuineko besoa altxatu,
ongi luzatu.
Eskua aldez ukabildu,
hatz erakuslea zuzendu,
aldi berean makurtu,
bere kopetara zuzendu
eta atzera
eta aurrera
mugitu
eta hurrengoan badakizu...

## Barkamena

Kamustua
zegoena
zorroztua.

Ez
dut
DEUS
sinesten

Sekula

# Begiak irekitzen

Gudari gazteak zioen
Euskal Herria,
bere herria aske izan arte
ez zuela bizarra moztuko
eta atzo
bere bizarrarekin
estropezu egiten
eta zoru horia
odolez zikintzen
ikusi nuen.

## Beheraldia

URTARRILA: Bizi berri baten hasiera.
OTSAILA: Aldaketak bizian txertatzen.
MARTXOA: Egoera berriaren kokapena.
APIRILA: Begi berriekin bizitzen.
MAIATZA: Emaitza berritzaileen itxaropena.
EKAINA: Egoera berdinean mantentzen.
UZTAILA: Iraganari aurre egiten aurrera begira.
ABUZTUA: Ezinegona nire barnean metatzen.
IRAILA: Konponbidea bilatzeaz aspertuta.
URRIA: Arazoen mataza handitzen.
AZAROA: Biziaren hozkeriaz nekatua.
ABENDUA: Mamu zaharrak gerturatzen.

D (enborak) E (ragindako) PRESIOA.

# Berekoi

Laguntza behar duenean
esku zabalak leku guztietan
laguntzeko antolatuak.

Laguntza eskatzen diotenean
bere eskuak patriketan
zeharo babestuak.

## Desorekan DESOREKA

Tintan itotzen den idazlea.
Boterean mozkortzen den lehendakaria.
Amiantoz kutsatzen den langilea.
Gatibuak zukutzen dituen espetxezaina.
Gidoi artean erortzen den aktorea.
Bere hodeitik herritarrak zanpatzen dituen politikaria.
Telefono linean galtzen den bulegaria.
Gela ilun batean torturatzen duen polizia.
Adreilu artean harritzen den igeltseroa.
Langileak larrutzen dituen nagusia.

Bakoitzak berea,
putakumeak ospea
langileak ajea.

Kate trofikoa
hankaz gora,
oreka kolokan
desorekan edonola.

# Erailketa

Gorpu beroa
pistola hotza,
gorpua hotza
pistola beroa.

## Errealista

Gaur bizarra uztea erabaki dut,
baina gudari zaharrari gertatu zaiona ez gertatzeko
askatasuna berreskuratzean
utzitako bizar luzea moztuko dut.

# GIZARTETIK AT!

Sarrailean
sartzen
ez
den
bainan
mekanismoa
sakatzen
ez
duen
giltz
soltea,
hori
bai
zortea,
zer
zaren
onartzea
eta
ala
ere
zurea
denarekin
jarraitzea.

# Gutxieneko soldata

Gurasoen sakelak hutsik
mahai gaina biluzik.

Azietak hutsik.
Ogi-ontzia hutsik.
Edalontziak hutsik.
Fruta-ontziak hutsik.

Jateko ezer barik
umeen sabelak hutsik.

Gutxik asko
Askok gutxi.

Langabezia a ze bizia
etxean gabezia.
Pobrezia etxeko bizilagun berria,
luzaro geratzeko etorria.

# Huskeri bat da, utzi beharra daukat

Damu
hutsalak,
hutsaldia
hutsaldua.

# Inkesta

Datuak nahi ditudan moduan eskuratu,
nire asmoa sukaldatu,
nahi dudan menua prestatu,
herritarrei plazaratu,
eta barregura barneratu.

# Itxi ahoa, zabaldu gogoa

Porlana nola egin eztabaidatzen mendeak daramatzagu
eta behingoz prozedura bat adostu arte
ez dugu porlana lortuko
eta ondorioz ez dugu ezer sortuko.

## Komenientzia

**Kasu** egin **kasu**alitatea **kasu** gutxitan ematen dela,
orduan **kasu! Kasu**alitatearekin topa egiten duzunean,
ez izan inuzentea
eta jakin ezazu
**kasu**alitateak **kasu** honetan
jatorri arrotza duela
eta zure ardura horretaz konturatzea dela.

# Kritikoei

Atera zuen poemak belarrietatik
eta entzun
ongi entzun!

Ama Santua bortxatu dut
eta zuetaz barre egiteko
olerki hau erraietatik okatu dut.

# Metadona eta bere lagunak

Espetxean
kanpoko drogak
ilegalak direnak
debekatuak daude,
ordea
drogak ez daude
debekatuak,
espetxeak banatzen dituenak
medikuarenak
legalak direnak
egunero
gozokiak bezala,
gutun-azal marroietan banatzen dituzte.
Presoa bere menpekotasunaren jabe ez izateko,
espetxea droga banatzailea da,
horrela
lasaitasuna nahi dutenean
presoari bere droga ematen diote
eta kontrakoa nahi dutenean,
giroa berotu nahi dutenean
gatibuari bere droga ukatzen diote.
Presoa gehiago kontrolatzeko
salaketa bultzatzen du,
salatariak sarituz
drogaz hornituz.

# Ordain ezazu

Negar malkoz
betea dagoen
edalontzia
edan ezazu,
behingoz
berak pairatu duen
psiko-biolentzia ezagutu ezazu
eta zure
errua irentsiz
sortutako amorrua
ordain ezazu.

## Otsoz mozorrotutako ardia

Jende aurrean ausart
ukabila erakusten.
Aurrez aurre koldar
eskua ematen.

# Pistola ukaldia

Garunarekin
ekin
eta
behatzarekin
egin.

# Sen primitiboa

Zingira
begira
odola
desira.

# Ukakorra

Nere izaera
eta
gaur egungo errealitatea
fusio puntua
eskuratzen dutenean
nire edalontzia
ezkortasun likido beltz batez
betetzen da.

olerkigilearen irudiaren erabileraren laguntzaz irakurleak poesia batekin bere buruan irudi bat sortu dezake, ordea poetak olerkiarekin irudi bat sortzen badu irakurleak poesia bere buruan irudikatu dezake

Oolkigarkz

## 1 + ∞

Nere armak bala amaigabeak ditu,
ez da sekula trabatzen,
AK-47 baino fidagarriagoa da,
edozein lekutan gorde dezaket,
ez du inongo mantentzerik behar,
merkea da,
galtzen badut edozein lekutan eros dezaket,
ez du garrik ateratzen,
ezta soinurik egiten,
ez du zulatzen,
baina min asko egin dezake,
non-nahi
nahi dudanean
nor nahi
isilpean lerrotzen.

## 2018-09-20

Espetxea zuhaitz bihurtua,
ni hosto bilakatua
eta askatasuna udazkenaz mozorratua.

## Aholku bat

Aske geratzeko falta zaizkidan
hogei egun amaigabeetan pentsatzen nabil,
begirada kaier presoan zuzendua daukat
eta eskuin eskua "dron" lanak egiten
bolalumari beste erabilpen bat ematen dabil.
Eskua indar gabe geratzean
bateria birkargatzeko
bolaluma orrira eraman dut
eta instantean
eskuan euli bat pausatu da
larruazal eremu estuan mugituz,
hanka txikiekin eskua bereganatuz,
bere kabuz ezin duena egin eskuari aginduz,
nire eskua mugituz,
bere iritzia izkiriatuz:

"Eulien bizialdia laburra denez
mendeen poderioz
gure genetikan
aldaketa bat suertatu da
eta arrautzatik
ateratzen garen momentu berean
badakigu gure bizia
laburra izanen dela,
baita opari itzela
eta segundo guztiak
eskuratu behar direla".

# Aldartea

Zuloan
sartu nintzen
eta orain ezin atera
ezin atea bilatu
edo agian
irtenbidea ezagun dut eta arazoa hurrengoa da,
zulotik at egotea
nahi ez izatea.

## Amestu beharrean, olerkien herrialdean galtzen naizenean

Lo sakonean nagoenean
olerkiak sortzen ditut,
gutxienez dozena erdi
eta hurrengo egunean esnatzean
olerki guztiak
gau ilunean zehar
nire oroimenetik desagertzen joan direnak
ahanzturaren hutsunean galtzen dira,
garunean dudan olerki kaiera
berriz ere hutsean geratzen.

# Atzeman

Bizitzako
une
egoki
bat
atzeman
dut
eta
poesia
berri
bat
ezagutu
dut
eta
garunak,
nire
lagunak,
bere
morroien
laguntzaz
topatutakoa
askatasunaz
jantzi
dut.

# Basoaren sinfonia

Zerua oskarbi,
bere zaindari
txoriak kantari
zuhaitzak sinfonia zuzendari,
azeria argi
zelai orlegian ehiztari.
Erreka uraren gidaria,
bertan bizia
erritmoz josia
sinfoniaren uhinen hilerria.

Basoa girotua,
sinkronian
musikaren erritmoaz kutsatua,
orekatua,
moldatua,
bere doinuetara
behin-betiko kateatua.

# Begira, hor dago!

Egurrezko banku baten gainean
eserita dago
eta aldi berean
bere ipurdi-kidean
pentsatzen dago
eta ausardiaren bidean
hurrengo galdera
egiten da;
nola bihurtu da
banku batean?
Galdera horren aurrean
pagotua geratu da
eta tarte horretan
bankutik adarrak
ateratzen hasi dira
eta bat-batean
zuhaitz baten barnean,
adar artean,
pago batean?
Bere munduan,
bakarrik
          eta
              gustura.

## Berpiztea

Ezaguna dena berriz ezagutzea,
berrezagutzea
bizipen askea dela ohartzea
eta horri esker
aske zarela jakitea
hori da bizitzea,
berrezagutzea,
maitatzea
eta ez trabatzea
oraintxe
fisiko
teoriko
bat
ez
sentiaraztea.

# Dikotomiko

Sufritzea
bizitzea,
bizitzea
sufritzea.
Sufrimendua
bizitzaren
sostengua,
gizakiaren
ardura
dikotomiaren
onura.

## Egunero

Goizero kirola,
nire nasai babesleak
estresetik babesten nau,
ni lasai geratuz.

Arratsero Antropologia,
nire jakintza irakasleak
zientzia orgia luzeetan ezagutzaren argia nire garun ilunean pizten du,
nigan ezagutza argituz.

Gauero Thc-a,
nire igarle erretzaileak
nire geroari ke jantzi bat jartzen dio,
nire etorkizunari ate asko zabalduz.

# Esperoan

Noiz
eta
arte
denbora
daramate
elkar
egon
gabe,
noiz
arte
?
?
?
?
?
?
?
?
?
?

# Euskal Herria

Zazpi
baladun
errebolberra
esku
artean,
jomuga
bakarra
begien
artean.

# Ezagutza

Nire gelan
lumarekin idazten
leihotik hegaka atera naiz
zeruko hodeietan
nire lumekin
hurrengo mezua idazten:
NI
    NAIZ.

## Froga hotz metalikoa

Begirada urduriak,
izerdi errekak,
belaun dardaratiak,
ezpain gosea non nahi,
ahots autoritario bat,
garun urdinak erne,
etorkizun banaketa,
geroaldi ametsak,
gero gezurtiak,
orainaldi geometrikoa,
eskumutur mugituak,
kezka uneak,
azken ahaleginak,
pozbide amaierak,
atsekabe bukaerak,
zelula desfilea,
goitik beherako agurrak,
metal soinua,
kautxu erre usaina,
lasaitasuna korridoretan aske.

Heziketa prozesu sakona
bala bakarreko errebolberra,
punteria kontua
bala nahi den
tokian ezartzea,
aztatzea,
zortea izatea.

# Galderak erantzuna aurkitu zuenekoa

Galderak ez zuen
bere etsaia aurkitzen.

Erantzunak ez zeukan
norekin haserretu.

Egun batean
beraien bizietan
txirrika bat
agertu zen.

Geroztik egun oso
gora eta behera dabiltza.

# Herri kirolak

Lanaren herentzia behartua kirolaren esentzia bihurtua.

# Irudimen lasaigarria

Uhin muxu hutsei esker
ipotxen artean nire musa esnatzen da
gauaren iluntasunaren babesean
inguma sena lokartzen den heinean
nire barnean
odol asea giltzapean
mantentzen den bitartean.

## Koma ez, punto baizik

Alaine Agirrek
bere olerki liburuan dio
berarentzat eroetxean erretzea
pixkanakako suizidio bat izan zela.
Niretzat basatzean erretzea
pixkanakako eutanasia bat izan dela esango nuke
askatasun koman nagoelako
eta gutxika nikotina
nire hiltzailea izatea nahi dudalako
basatzako biziak ez duelako
ezertarako balio,
eguneroko egin beharra
bizirik mantentzea delako.
Horregatik egunez egun
gehiago erreko dut
nire birikak kutsatuko ditut,
pixkanakako eutanasia gauzatuko dut
eta amestutako
askatasuna lortuko.

# Kopetaraino

Kopetan
bederatzi
zimur
dauzkat
eta
hamargarrena
agertzeko
gogoa
daukat.

## Onartzen

Ezaguna ezezagun bihurtzen denean
eta ezezaguna ezagun
ohartzen zara zahartzen hasi zarela
urteak aurrera doazela,
bukaera gero eta gertuago dagoela.

# Orlegierre

*Orlegierre* nire uztako nahitaezko sendagaia.
Berari esker nire;
Minak.
Oinazeak.
Buruhausteak.
Arazoak.
Harrikadak.
Orokorrean biziaren kolpeak
jasateko botika aparta.

Ezkerreko eskua zabal,
euri orlegia,
batzuetan, ez beti, poluzio marroia....
eskuin eskuko behatzak lanean
nahasketa prest esku artean,
eskuin eskuarekin arroz papera ezarri,
bira...
bildu...
listu ilara...
eta artistikoki bi eskuen laguntzaz itsatsi.
*Orlegierrea* osatua.

*Orlegierrea* ahoan ezartzean
garunean kontrako prozesua
ezpainek burmuinari amesteko agindua ematen diote.

Kea ohean sartu aurretik
nire eskuek agindua jaso gabe
lurreko uzta sutzen dute
atxiki pausatuekin *orlegierrea* erretzen
garuneko birziklatze prozesua martxan...

Atxiki bakoitzarekin
bizi kolpez iltzatutako iltze bakoitza
ateratzen da
iltzeek utzitako zuloetatik
ke sendagarria sartzen,
hutsuneak estaltzen
eta sendatzen.

*Orlegierrea* erretzez amaitzean
berriz ere osatua nago,
prest hurrengo kolpeak jasotzeko,
berriz ere osatzeko
laguna alboan dudalako.

## Sormen gaua

Atzo goizean balantzan pisatu nintzenean
90 kilo pisatzen nituen,
gaur ordu berdinean pisatu naizenean
91 kilo pisatzen nituen.

Atzo eta gaur artean
kilo bat gehiago gainean,
gauean buruari eragitean
garunean kilo bat pentsamendu sortzearen eragina.

## Thc-Express

Hontza uluka hasten denean
nahi dudan tokira joateko,
nahi dudana egitekotan eta nahi dudanean
loaren geltokira iristeko
lokomotorez mozorrotzen naiz.

# Volapük

Goikoaren lagun batek
sortu ninduenez
oso harrotua nengoen
eta denen ahotan egon nahi nuen
eta harroputza izateagatik
historiak irentsi ninduen
eta historian zehar baztertuak
izan diren ideiak
ezagutu nituen
eta beraiek bezala
iraganeko komun zulo batean
amaitu nuen,
eta nire garaikide batek
esan zuen moduan,
"...beste moda bat;
handitu eta indartu ondoren
txikitzen eta ahultzen ikusi nuen.
Ondua zegoena
usteldua geratu zen...".

## Zaparrada eta uholdea

"...leiho negartiaren bestaldean heriotzaren soinua indarrean..."
eta
"...lurrean etzanda
zeru biluzia begira
zigarroaren kearekin
hodeiak sortzen nabil
euria erori dadin
bizia jaio dadin...".

# Zeozer landu nahian

Guggenheim
mordo
bat
zakarrontzian,
kultura
eza
kaiera
alferrontzian.

## Ziztada

Gau mutua,
tigre hegalari harrotua,
odolustea burutua,
iluntasunean atseden hartzen duen azal gorritua.

# 8 Egun falta dira

Askatasuna
aldakorra
da
eta
gaur
2018-09-12,
niretzat
askatasuna
esnatzea
eta
arratsaldean
zer
egin
ez
jakitea.

# Ama-gi

Kartzela
atzean
uztean
ama
besarkatzean
sortzen
den
lotura,
ASKATASUNA.

Ezin dudanez
nire ama besarkatu,
askatasuna eskuratu
lo seko nagoenean
askatasun ase naizela amesten dut
ametsen eremuan ase nahia asetzen delako
amets asearen erruz
gatibu ase geratu ez gero.

## Aspertua

EGOERAZ ASPERTUA NAGO !

Kirola egiteaz aspertua nago.
Ikasketez aspertua nago.
Olerkiez aspertua nago.
Elikaduraz aspertua nago.
Oheaz aspertua nago.
Aulkiaz aspertua nago.
Paisaiaz aspertua nago.
Jendeaz aspertua nago.
Espainiaz aspertua nago.
Basatzaz aspertua nago.
Galizaz aspertua nago.
Gutunez aspertua nago.
Egunkariez aspertua nago.
Irakurtzeaz aspertua nago.
Ibiltzeaz aspertua nago.
Musikaz aspertua nago.
Telebistaz aspertua nago.
Irratiaz aspertua nago.
Liburuez aspertua nago.
Aldizkariez aspertua nago.
Idazteaz aspertua nago.
Kanpaia jotzeaz aspertua nago.
Zerriaz aspertua nago.
Oinetakoez aspertua nago.
Arropaz aspertua nago.
Pentsatzeaz aspertua nago.

Bizitzaz nekatua aspertua nago.
Existentziaz aspertua nago.
Kideez aspertua nago.
Zutaz aspertua nago.
Nitaz aspertua nago.
Zuetaz aspertua nago.
Familiaz aspertua nago.
Beraietaz aspertua nago.
Politikaz aspertua nago.
Aurrez aurrekoez aspertua nago.
Lagunez aspertua nago.
Presoez nazkatua nago.
Erlijioaz aspertua nago.
Espetxezainez aspertua nago.
Txaboloaz aspertua nago.
Moduluaz aspertua nago.
Iraganaz aspertua nago.
Orainaz aspertua nago.
Geroaz aspertua nago.

Edateaz aspertua nago.
Erretzeaz aspertua nago.
Deiez nekatua nago.
…...............................
ASPERTZEAZ ASPERTUA NAGO !
Gatibua,
mugamugatubateanmugatua nago,
hori argi dago.

# Bakardadea

Lerro
hauek
amaitzean
olerki
zentzugabe
hau
kritikatzeko
ondoan
inor
ez
edukitzea
eta
nire
arnasa
bakardadearen
soinu
banda
izatea,
a
ze
kasualitatea.

# Bakarrizketa

Bai
ala
ez?
EZ,
(m)INA; arazoaren muina.

## Basatza

Gaizki elikatua.
Psikologikoki torturatua.
Egun gehiena ahulki bati lotua.
Ohe txiki batean estutua.
Lagunak nigandik urrundua.
Beste pertsona bat izatera behartua.
Faltsukeriaz inguratua.
Errespetatzen nuen jendeaz kamustua.
Nire existentziaz nekatua.

Basatza latza da
errealitate gordinaren ispilu
gizakien krudeltasunaren eredu

Basatzan;
pertsona iltze bat da,
bizia mailu bat
eta basatza bera mailuak iltzeari ematen dion kolpea.

# Bide ezberdinak

Idazlearen
bolalumaren
eta
kaieraren
arteko
orgia
amaitua
olerkia
sortua.
edo
hitzekin
azaldu
ezin
dizudana
hizkiekin
adierazia,
ala
neurona
gidoilariek
olerkiaren
gidoia
lantzen
dute,
eskuin
eskuak
olerkia
antzeztu
dezan.

## Bigarren aukera

Gauero
bero
egoteko
eta
gogoa
hezetzeko
izara
artean
zirrara,
zoritxarra
algara
bakarra,
biren
beharra
batek
gauzatu
beharra.

# Desagertzez mozorrotutako erailketa argitu gabea

......norbaiten buruan sortua......

......nonbaiten momentuan burutua......

......noizbaiten ezkutuan lurperatua......

## Egongaiztasuna

Zigarro bat erre dut
eta hautsontzia hutsik dago,
errautsa dorre egonezin batean bihurtua
zigarro puntan dago,
nire biziaren egoera
irudikatzen dago.

# Gauerdiko poesia

Idazle
lotiaren
amets
idatziak,
esna
dagoen
irakurlearen
amets
irakurriak.

## Gauero

Ortzian izarrak xerkatzen etsitu ziren
presoen malkoz herdoilduriko leiho gezurtian
zerua arakatzen presoen altxorrak
bilatzen ari naiz
eta gauero espero dudan
emaitza berdina lortzen dut,
ez dut zernahi argizagi bakar bat topatzen,
ondorioz etsitua gorrotoz betea oheratzen naiz
eta gogoz hurrengo egunean pentsatzen lokartu naiz
eta lo seko nagoenean
gau izartsuekin amesten dut.

# Geldi

Mahai gainean
aurrez aurre
eguzkitako betaurrekoak ditut
eta beraien islan
behin da berriz
bat-bateko argazki berdina
ikusten dut
eta ni toki berdinean
jarraitzen dut.

## Gelditu mesedez

Lurrean,
gure planetan
eguzkia ez da itzaltzen
beti nonbaiten piztua dago,
nire garuna egoera berean dago
eta ni nekatua nago.

# Goiz hezea

Telebistak nigan sortu duen hodeia uxatzeko
leihoa zabaldu dut eta basoaren arnasketari so
zigarreta bat piztu dut
eta bere kea nire eztarrian sartzean eztulka hasi naiz,
hala ere erretzen jarraitu dut
eta ondorioz arnasestuka hasi naiz,
eskerrak zuhaitz altruista bat
nire ordez arnasten hasi den.

## Gorpu-kide

Denok
gugan
daukagun
solaskide
mutua.

# Holan nago

......luma gabeko zerutarra kaiolan......
......ala nire izena kolokan......

## Idazten ikesi zaun ontze

Guhatzian itzela neiz
ilargiyan mugimendu motela
ne biziyan idazkiyen arbela
ta zeru illune goi arnas itzela
hoi bakit argi dakatela
ta gaue ne arreba dekela
argi dakat hori izarrek dakibiela
ni dakiten bezela beraiek zeruban bizkarzainek diela......

# Idazten

Sortzen
mezua
zabaltzen.

Isolatzen
ni
aldatzen.

# Nahia



Ni
geldi.

Zu
izoztua.

Ni
presondegian.

Zu
argazki
batean.

Ni
nire
irudipenetan
zure
alboan.

Zu
nire
poltsikoan.

Ohe zimurtuaren gainean
maleta asetua
bolkatua.

Gau mahian
egur biluzia
hautsa iritsi aurretik
bere edertasuna erakusten.

Armairuari bizkarra ematen
emakumea
ohe gainean
paretan dagoen
egutegia begiratzen
zenbaki gorriak zenbatzen
beraietaz erruduna sentitzen.

# O.N.E.N

Olerkiturik hitza nire oxigenoan bilakatu da.
Norabide barik ezjakintasun geltokian geldirik nabil.
Eskumuturra geldirik arkatza kateatua.
Nostalgiaz kutsaturik zuen oroitzapena nigan.
Oldartu Nahian Etsitu Naiz.

# Oroitzapenak

Gertaera
erailen
bilduma
begira
bere
oroitzapen
izoztuak
berotzen
hasten
dira
garunean
urtzen,
bere
barnean
uholdea
sortzen,
bere
azalean
zehar
ur
tanta
gazituak
erortzen

# Pairamen zenbatzailea

Segundoak daramatzat milakoak zenbatzen.
Minutuak daramatzat segundoak kontatzen.
Orduak daramatzat minutuak zenbatzen.
Egunak daramatzat orduak kontatzen.
Asteak daramatzat egunak zenbatzen.
Hilabeteak daramatzat asteak kontatzen.
Urteak daramatzat hilabeteak zenbatzen.
Hamarkada pasa daramat urteak kontatzen.
Zigorraldi osoa daramat denbora zenbatzen.

## PENTSAMENDUAK TINTAN MOZORROTUAK

IDAZTEN......
BIZITZEN IKASTEN.
NIRE BIDEA AURKITZEN.
GOGOKOA EZ DUDAN ERREALITATEA ERALDATZEN.
DENBORA ERRETZEN.
KOERENTZIA EZAGUTZEN.

IDAZTEN.......
ZURE AURREAN BILUZTEN.
BAKARDADEA ZAINTZEN.
IRUDIMENA BIRSORTZEN.
KARRATUARENA APURTZEN.
EZARRITAKOA UKATZEN.

IDAZTEN......
NAHI DUDANA EGITEN.
KOLEKTIBITATEA BAZTERTZEN
BANAKOTASUNA BESARKATZEN.
NAIZENA ERALDATZEN.
BERRIRO JAIOTZEN.

IDAZTEN......
GARUNA ERAGITEN.
EROKERIA BARETZEN.
ALDI BEREAN AREAGOTZEN.
IZAERA GOGORTZEN.
LEHUNTASUNA MAITATZEN.

IDAZTEN......
HEZURDUNAREKIN HITZEGITEN.
ARBASOEKIN HARREMANTZEN.
MARIREKIN LARRUA JOTZEN.
A-MAGI BARNERATZEN.
AURREIRITZIAK BIRZIKLATZEN.

IDAZTEN......
BEGI BERRIEKIN BIZIA IKUSTEN.
IRRIBARREA ERAILTZEN.
MALKOETAZ GOZATZEN.
SENTIMENDUETAN BIDAIATZEN.
NORTASUNA NIREGANATZEN.

## Preso baten leloa

...atzo herenegun izan zen
gaur atzo da
bihar gaur izango da
etzi bihar izanen den bezala...

...herenegun, atzo, gaur, bihar, etzi...
...errepika, errepika...
askatasun gabezia
preso baten bizia,
errepikapenaren hazia

# Tinta beltza

Nire bolalumaren
tinta beltza
gutxitzen doan bitartean
gero eta garbiago
hurrengo esaldia
irakurri dezaket;

**“NIRE BIZIA ZURE OLERKIEN OINARRIA!”**

# Uholde

Zeruak
lurrari
labankadak
ematen
dizkionean
lurra
odolusten
hasten
da
eta
bere
odolean
itotzen
da.

# Zentzua galtzen

Nire
loa
hil
da
eta
insomnioan
haragitu
da.

# Arnegatu

Bart
amestu nuen
nire birraitonaren
ametsa
egi bihurtu zela,
nire aitonaren
bizia izan zela.

Bart
amestu nuen
nire aitonaren
ametsa
egi bihurtu zela,
nire aitaren
bizia izan zela.

Bart
amestu nuen
nire aitaren
ametsa
amets gaiztoa bihurtu dela
nire bizia
amets gaizto bat izan behar dela.

# Askatasun Muxu Atsegina (A.M.A)

Energia mugatua naizenetik
dena ikuspuntu ezberdin batetik ikusten dut.

Bere gorputzetik atera nintzenean
berari esker askatasuna lehen aldiz arnastu nuen.
Bera izan zen lehen muxua eman zidan pertsona.
Bere besoetan atsegina sentiaraztea zer den ikusi nuen.
A.M.A.-ri esker lehen hiru sustrai pausoak eman nituen.

Urte intentsu batzuen ostean
natura legez
bere albotik urrundu nintzen.

Nire bizi laburrean eman ditudan
pausu guztiak aztertuz gero
bere aztarnak ikus daitezke.

Aspaldi bat izan ginen,
elkarbizitza honek gugan
lotura zatiezina sortuz.

Orain arte lotura genetikoari
ez nion garrantzi handirik ematen.

Orain dela 9 urte bere albotik indarrez eraman ninduten,
geroztik gure lotura estutuz eta indartuz.

Urteen poderioz
Amerika-ko genoziden ondorengoek
bortxaz ezarri zidaten
negu gogorra
jasanezina egiten zait,
eskerrak gure lotura
mantentzen dituzten marruskadurak
basatzako hotza
berotasunez trukatzen dutela
ni bero-bero mantentzen
zezen potroz ezarritako negua amaituz
uda atsegin bati hasiera emanez.

Urtaroa igaroz…
Askatasun muxu atsegin bat jasoz…
Bere bizi eremu latza leunduz…
Gure loturaz eztituz…

# Birjina, inurriak, ura eta lohia

Birjina pasa ondoren jaio nintzen.
Inurriekin batera ibiltzen ikasi nuen.
Herri txiki berdin-ezberdin-etan hezi nintzen.
Lohi artean mantso eta trakets gizon batean bihurtu nintzen.

# Desira bustiak

90 Hamarkadan
kaleetan balio ezberdineko
billete erreak ikusten zirenean
eta bazter guztietan bolbora usaina zegoenean,
bai garai horietan,
gu umeak ginenean
txirrinda gainean
herriko biziaz ihesean
edo gardenak izaten
jendeaz aldendu nahian
beheko basoko erreketan
bertoko osinetan
lamien artean
harri laukiekin
erreka ertzean
jolasean geundenean
ur gainean
sortzen ziren uhinetan
gure ametsak hedatzen ziren.

…

Gaur egunean
beheko basoko
ametsen uhinak
errekak zeharkatzen
ikus daitezke.

# Elkarrateratzeko amona

Ostiralero ordu berdinean hitzartutako espaloian kokatua.
Ilea zuritua.
Begirada atzerrian galdua.
Aurpegia zimurtua.
Lepoa zapi zuri-beltz batez bildua.
Esku artean egur zati landua.
Bularraldea ikur batez zulatua.
Bihotz nekatua espetxeratua.
Hanketan kilometroen pisua finkatua.
Zelatan daudenei izorratu arren, herri oso baten eredua.

## Eremutar

Erotzean
ez
sartu
eroetxean,
mesedez
utzi
bakean,
bakardadean
zentzuaz
ihesean
jarraitzen
dudan
bitartean.

# Etxean

Beheko
basoan
barneratzean
besarkada
jasotzean
nire
aurpegian
malko
bat
agerian.

Azkenean
askatasunean.

## Gezurretan

Denok egiaren jabe
sentitzen gara
ordea,
soilik egi bat dago,
orduan
nor da
benetako egiaren jabea?
Egiaren jabea
nor den
batek jakin,
argi daukadana
zera da,
nire jabea ni neu naizela
eta nire egia
nirea dela.

# Gori-gori

Pertsona asko
pertsona
batez,
berdinaz, gogoratzea
erraza da.
Pertsona bakar hori
pertsona
guztiez,
ezberdinez,
tira denez, akordatzea
ordea,
beste kontu bat.

## Guk ere maite zaituztegu

Ostatu gabeko herri hauetan
zuen maitasunaz mozkorturik
eta astelehenez maitemindurik,
errealitate ezberdineko munduak
sentimendu behartu batez lotuak.

# Gutxi barru

Egunak aurrera doaz,
ileak badoaz
eta agurrak gerturatzen doaz.

# Inoiz arte lagun

Elkar ezagutzen
igaro genituen
une guztiei esker
gure laguntasuna
jaio zen,
elkarren lagun izaten
igaro genituen
une guztien erruz
gure laguntasuna
hil zen.

# Iruñea

Herri txiki berdin-ezberdin-etan
ezkutaketan
jolasean
dabilen hiria,
azken finean
hiri txikia
herri handia.

## Ispilu aurrean

Ez naiz mutil jakintsuena,
ezta ere gizon indartsuena,
aldiz
ni
naizena naiz
eta hi haizena haiz,
bost axola beraz.

# Ispilua

Bere
aurrean
nagoenean
nire
osotasuna
osatzen
dituzten
bi
aldeak,
psikologikoa
eta
fisikoa
larrua
jotzen
hastean,
instantean
nire
ahuleziak
azalarazten
hasten
dira,
egunean
zehar
daramadan
maskara
kentzen,
gardenki
aurreiritziak
baztertzen,
nire
osotasunean
osagaiak
maitatzen.

## Jaio... bizi... hil... batek jakin

Denbora bi ahoko labana da
aho batekin ebakitzen zaitu
eta bestearekin larrutzen zaitu.

# Joan denaren oparia

Maite den norbait hiltzean
iruditu ez arren
ate bat itxi ordez
ate bat zabaltzen da
pertsona horrek utzitako hutsunean
zure nahiak bere ametsekin nahasteko
tartea, unea azken finean
aukera paregabea duzulako.

## Ke irudipen

...nire ziegan nago
erabat aspertua
irakurtzen begiak erre ditut,
idazten begiak higatu ditut,
denbora ebasten duen gailua behatzeaz nekatu naiz,
kirola egiten giharrak xahutu ditut,
autobide gutxi begi bistan
eta nikotina yonki fidel gisa
zigarreta bat bestearen atzetik pipatzen nabil
lokomotora baten moduan erretzen,
oharkabean nire infernu pertsonala
kez bete da,
nire inguruko eremu osoa
laino gris batez estaliz,
bat-batean kearen artean
profil desitxuratuak ikusten hasi naiz
eta euli baten hegaldian
ke artean
zure ertzak antzeman ditut,
orduan zu besarkatzera joan naizenean
momentuan desagertu zara
eta errealitate gordinarekin talka egin dut,
ni preso nagoela
eta zu
nigandik ehunka kilometrotara zaudela
ta besterik hau nire bururapen dela
eta horregatik ile gabe geratzen ari naizela.

# Lagun min

Zu
zeu
beste
gorpu
batean.

## Laguntasuna

Gure laguntasuna
ikastolan hasi zen,
ostean ikasten ezagutu ginen.
gure adiskidetasuna
kalean ondu zen
bertan jolasten lagun egin ginen.

Ikastolan hazia
kalean ondua,
sustrai lotura zeharo bitxia,
zuhaitz berekoak
adar ezberdinekoak.

# Larunbata

Gaur lagunak ni bisitatzera etorri dira
eta beraiekin solasean egon ostean
gizartearen itzalean
nire txaboloko bakardadean
ispiluaren aurrean ezartzean
eta Kafkaren labezomorroak mingaina ateratzean
errealitateak bere aurpegi ezberdinak erakutsi dizkit.

## Nekatu arte

Gero arte
agurraren arte,
beraien liburuaren pasarte,
baita ere
ihesbidearen arte
joanaren aldarte
geratzen denaren onartze
gezurra tarte
bien parte
harremanaren bitarte,
berriz ere
bihar arte
edo ikusi arte
egunerokotasunaren ausnartze
bikotearen gizarte
bizitako momentuaren uharte
elkarren istoriaren Bonaparte
eta gutxi balitz,
ere
erokeriaren kutsua dakarte
adioaren estandarte
diosalaren
arte.

# Ni 2.0

Barazki baten hazia
baratzean lehen aldiz ezartzen denean,
ateratzean
ongi zainduz gero
barazki osasungarri bat agertzen da.
Barazki berri horren hazia
baratzean landatzean
ateratzen den alaba
indartsuagoa aterako da,
hobetua,
erabili den hazia
lur beretik atera delako.

Gure kasua
naturaren plagio bat da,
ni adarrekoa naizelako,
zu ordez eskukoa.

Nire akatsetatik ikasi duzu,
asko izan direnez
master bat eskuratu duzu.

Beti nire ondoan, ni gorputz handiko,
zu txikiko,
aldiz, zure itzala nirea baino luzeagoa.

Nik uste nuen
ni zure eredu nintzela,
biziak kontrakoa erakutsi dit,
benetan zu nire eredu zarela.

Urte asko
beharko ditut
zure mailan egoteko.
Zu ondua,
biltzeko prest
ni ordez oraindik heldugabea...

Unai izena
ni jagoteko sortua
nire anaia maitea.

# Ongi etorria

Mira egoteari utzi,
mira ezazu jendartea
ETA mira sortzen den miraria.

## Postazko harremana

Bi kokapen.
Bi pertsona.
Bi mahai.
Bi ahulki.
Bi bolaluma.
Sentimendu bakarra.

# Siamdarrak

Begiak itxi eta zugan pentsatzen dudan aldiro
gure azken urteetako solasaldi laburrak
burura datozkit;
Kontaktu urruna,
formula matematiko krudelak,
plastikozko diru usaingabea,
atzamar metaliko hotzak,
errealitate aldaketa,
urduritasun diluitua,
zure ahots lasaigarri eta laguntzailea,
300 segundo abnesiko,
sirena hots zorrotza,
agur behartuak,
ISILTASUNA.

Begiak zabaltzean
nire begietatik
malko bana isurtzen hasi dira
bi ur tanta
batean bihurtuz,
Siamdarren efektua lortuz.

Guri malkoei baino
bide luzeagoa
geratzen zaigu elkartzeko,
baina beraiek bezala
batuko gara
eta
biok bat
izanen gara,
gure laguntasuna
bikoitz ezina delako.

## Sinbiosia

Ni
zu
gabe,
herri
bat
hizkuntza
gabe.

Zu
ni
gabe,
herri
bat
hizkuntza
gabe.

Ni
herria,
zu
hizkuntza.

Zu
eta
ni,
biak
Euskal
Herria.

# Zeuretzat ugalketa ezezaguna dena... ezaguna izango dena... heriotza arte zurekin egonen dena!

Odol ezberdinekoa,
beste garai batekoa,
gainera oraindik sortu gabekoa
ala ere zure bihotzekoa,
zu bai zarela
bihotz onekoa
eta gainera zorionekoa.

## Ageriko

Zuen harremana
zirko bat da,
zu animalia zara eta bera hezlea.

Zuk gustuko izan edo izan ez arren
egunero berak ezartzen dizun
uztaia igarotzen duzu,

Kaiola batean bizi zara,
bere menpe zara
eta ala ere pozik bizi zara,
inozoa zara.

Berak animali sena lapurtu dizu,
nortasuna suntsitu dizu.

# Amets gaiztoak

Amets gaizto bat gauero
nire kasko ero honetan:
Oilo bat zezen baten gainean
nire atzean popatik ematen.

A ze patu latza,
ordea hau da
euskal-gaitza.

## ASKAtaSUNA

Esnatu berri kafe batek
sortzen duen bizi poza.

Egun bero batean
zeruak negar egiten duenean
jasotzen den freskotasuna.

Zuk muxu bat ematean
sentiarazten dudan berotasuna.

Liburu goxo bat dastatu ostean
geratzen den sentsazioa.

Segapotoaren kateak apurtzean
gailua zorura jaurtitzeak ematen duen zirrara.

Nagusi olagarroa popatik hartzera
bidaltzean sortzen den poztasuna.

Espetxea uztean eta kalea zapaltzean
sortzen den sentimendu festa.

Zure umea lehen aldiz esku artean duzun lehen momentuan
aurpegian marrazten zaizun irribarrea.

Laguntza behar duenari eskua luzatzean
plazaratzen diren eskerrak.

Egarri zaudenean ur trago on bat
edatean gorputzak adierazten duen asea.

Mendi gailur batean
zure ahotik ateratzen den garrasia.

Bidaiatzen eskuratzen
diren bizipenak.

Ehunka kilometro gidatu ostean
senide bati besarkada ematean eratzen den maitasuna.

Baita hitz joko bat;
ASKAtaSUNA.
Eguzki izpiez argitutako aska.

## Asteburu mitologiko etiliko erotikoa

Ostiralean Ninfa batekin oheratu nintzen
eta larunbatean sorgin batekin esnatu nintzen.

Larunbatean Basajaun batekin oheratu nintzen
eta igandean Tartalo batekin esnatu nintzen.

# Bolaluma beltza

Nire
izaeraren
ordezkaria.

## Edertasuna

Fisikoa
fisikoa
fisikoa
fisikoa
............
gainontzekoa
alferrikakoa.

# Egia esan nahian, mozala kendu nahian

Nire zigorraren itzalpean
*El Pais* izeneko egunkari atzerritarrean
iritzi atalean
kriminologia artikulu batean
hurrena irakurri nuen:
"...ikerketa askok diote
serieko hiltzaileak
pertsonak erailtzen hasi aurretik
animaliak hiltzen dituztela...".

Egunkari berdinean
politika atalean
"falomakia" artikulu batean
hurrengoa irakurri nuen:
"...Espainian zezen hilketak
bultzatu eta babestu behar dira...
...heziketa kontu hutsa da...
...eskoletatik hasi beharra dago...

Kasu!
Epaile jauna
nik ez dut ezer iradoki
soilik bi albiste alderatu ditut.

## Ezin dut askatasuna berreskuratu, baina bai kulunkatu

Preso
ez
ditut
galtzazpiak
erabiltzen
nire
zakilak
nik
ez
dudan
askatasuna
izan
dezan.

# Ezinezkoa dena

Urrea
        diamantea
                urratzen.

# Gainezkaldia

Gehiegi pentsatzeagatik
eta gauzei zentzu gehiegi emateagatik,
mamu kafkianoek
nere jomuga den nire garuna
Marx anaien itsasontziko gelan bihurtu dute.

# Galdera bat, erantzun bat

Zer
da
askatasuna?
Galtzazpiak
erosteko
gaitasuna
adibidez.

## Gaur egun

Mussolini Italian,
zaldi bat adarrez adar.

Hitler Alemanian,
artzain txakurra hegaka.

Franko Espainian
zezen bat zezen-plazan.

# Gau itsua

Gauerdian eguzkia erail ondoren
kanpaia jotzen dut
ilargiari,
bai hor goian dagoenari
mezu bat bidaliz.

## Gaur, PUNK!

Pagoa! Ez izan geldoa
lurrera ezazu zure izaera irmoa,
dantza ezazu “pogoa”
eta ureztatu ezazu gogoa.

# Hodei-Airlines

Buruan
heliportua
agertu da,
estresak
lurreratzeko
lekua
izan
dezan.

## Idazle zirikatzaile

Olerki hau idazten
nire garunean kezka bat hazi zait
azkar landare izatera iritsiz,
olerki luze edo laburra idatziz,
nire kezka ureztaraziz.

Buruan landarea haziz
nigan kezka bizia,
gainera ohartzen hasia
zure iritzia beharko dudala
erabakia hartzeko
idazle zoria berreskuratzeko,
lerro hauekin zuri
ziria sartzen jarraitzeko.

# Ideologia

Ezkertiarra naiz bai,
baina ez
ezkerreko alderdi batekoa naizelako
baizik eta
zakila tente jartzen zaidanean
ezker aldera makurtzen zaidalako.

## Ipurdi aldrebesen eguna

Popatik
joan
dadila
maitasun
komertziala.

# Jainkoaren izenean

Apaiza pulpituan zutik,
belauniko dauden fededunei burua jaten
eta ni
        komentuan
zutik dagoen moja bati alua jaten.

## Jaio berri

Lo-lo egon beharrean
lo, lo-ka
insomnioaren abestia ahopeka
erritmoaren laguntzaz
gurasoen loa (a)gortzen.

# Kanpaia jo

Nire
zure ganako
sentimenduak
eskumutur
mugimenduz
adieraziak.

## Kar, kar, kar...

Kaskamotzen oihua
oi!-oi!-oi!...
bada,
joan daitezela
logopedara
edo bestela
hiztegi bat
har dezatela.

# Orrazia

Sekula

berreskuratuko

ez

dudan

iraganaren

ikurra.

## Politikaren artea

Ezker
Eskuin
Upper-Cut
Crochet
K.O.

# Ur tanta

Txikia sentiarazten naiz
ur botila batean sartzeko haina
eta ideian igerian
ur botilan
barnean
ito naiz.

## Transgeniko

Kaka egin ondoren komun zuloa satelite soaz begiratzean ohartu naiz mokordoak galdera ikur itxura duela.

# 69

31 Urterekin
38 urteko
emakume batekin
gozamena miazkatzen.

## Vascuence

Euskal herritarren egunkaria soinean nuela
Euskal Herri erdian
Nafarroako herri txiki batean
Beriainen magalean,
euskaraz soilik mintzatzen zen
amona bat ezagutu nuen
eta berarekin hitz eginez
txundituta geratu nintzen
berak nik nuen egunkaria irakurtzean
ez zuelako hitzik ulertzen.

## Autoa izan nahi dut

Erregai gabe geratu arte
zure aurpegiko,
zure belarrietako,
zure lepoko,
zure sorbaldetako,
zure bularretako,
zure sabeleko,
zure besoetako,
zure eskuetako,
zure bizkarreko,
zure ipurdiko,
zure aldaketetako,
zure izterretako,
zure bikietako,
zure oinetako,
..............................
Zure gorputzeko esperientzi autobide guztietatik gidatu nahi dut.

# Besarkada

Hitzen bitartez adierazi ezin dudan sentimendu sakona.
Gorputzaren bitartez adierazi ahal dudan sentimendu sakona.

## Emazte-Senar

Plastikozko aulki egonkor batean
hanken eta bizkarraren laguntzaz aulkian kulunkan
leihotik hodeiertz hutsari so
bigarren eskuko zigarroaren kearekin eraztunak egiten
eta patxadaz denboraren poderioz
nola desagertzen diren ikusten
eta bat-batean...
KRAKKK!
hankabikoa hankabakar
eta bera mindua lurrean mindua
baina barreka
emaitza espero zuelako
eta ala ere aulkian
eseri delako.

# Espetxean larrua jotzen

Emakume
gabe
eskua
jabe.

## Ez dut ulertzen

Emakumea zertarako makillatzen zara?
Edertasuna margotzeko.

Emakumea zertarako makillatzen zara?
Aurpegiko ustezko akatsak estaltzeko.

Emakumea zertarako makillatzen zara?
Emetasuna itxuraldatzeko.

Emakumea zertarako makillatzen zara?
Matxismoz mozorrotzeko.

Emakumea zertarako makillatzen zara?
.....................................................................

Emakumea zertarako makillatzen zara?
.....................................................................

**EMAKUMEA ZERTARAKO MAKILLATZEN ZARA?**

# Ez irakurri

Zuri esan behar dizudana
ez esateagatik
esaten ez ausartzeagatik
ez naiz koldarra,
gauza da
bolaluma eskuan
ausarta naizela
eta aurpegira sekula
esango ez dizudana
idazten dudala
DESIRA ZAITUDALA!

## Feminista Emetasuna

Feminista **Emetarra naiz**
**eta arro nago,**
**gizonezkoa naizelako.**

# Fusio-ontzia

Gure fantasian
ni ontzi bat naiz,
zu bela bat zara,
ohea itsasoa
eta gure irudimena ozeanoa.

Zu nire gainean
elkar gozamen olatuak saihesten
errai artean nabigatzen,
kresal usainaz gozatzen dugun heinean
belaontzia sirenarantz eramaten.

Sirenaren doinuak
gero eta gertuago
gero eta ozenago,
gu gero eta azkarrago,
zeharo erotuak
zeharo berotuak.

Azkenean sirena
gure alboan.

## Gogorra da

Ohe baten gainean emakume ile ori bat ikusi daiteke
ez dago zeharo biluzik
izara zuri batek ia gorputz osoa estaltzen dio
soilik bere edertasunari nortasuna ematen dioten
biribilguneak ikus daitezke.

Ohe aurrean nago,
ohatzea izara zuri-urdin batez jantzia,
pentsakor,
goikoa nire irudimenean dago,
etzauntza gajoa hutsik
eta ni zutik
          bera bezala.

# Klixe

Gizonezkoak,
metxeroak
bezalakoak
dira.

## Larru kontua

Zutaz ahazten saiatu naiz
zure irudiaren forma nire burutik
ezabatzen ahalegindu naiz,
baina zure edertasuna
nigan bolalumaz marraztua dago,
ez zutaz maitemindua nagoelako
ez zaitudalako maite
ikaragarri desira zaitudanez baizik
zure sexualitateak izugarri erakartzen nauenez,
horretaz dudarik ez!

# Maitaleen usadioa

Amodioa egitea
eta
adio esatea.

## Maitasuna

Isilpean,
oharkabean,
bat-batean
nire bihotzean
zure taupadak
nire taupadekin konpasean.

# Maitemindua I

Maite ardo mindu bat edaten
ezkutuan bere maitasunaren muina den bere mutil ohia zelatatzen
eta aldi berean, bere zoria madarikatzen
maite duen Asierrek, Amaia maitatzen jarraitzen duelako.

Maite, mindua, ardo mindua eskuan, mozkortua
amaitua dagoen zerbaiti hasiera eman nahian,
bitartean, maitasunaren minean igerian.

# Maitemindua II

Zutaz
ahaztu
nahian,
nitaz
ahaztu
naiz.

# Maitemindua III maitatua eta mindua

Hasierako egi madarikatua;

MAITE ZAITUT!
MAITE ZAITUT!
MAITE ZAITUT!

Azkenean gezur bihurtua;

GORROTO ZAITUT!
GORROTO ZAITUT!
GORROTO ZAITUT!

Errealitate madarikatua;

UZTEN ZAITUT!
UZTEN ZAITUT!
UZTEN ZAITUT!

Gure artekoa amaitua.

## Muxu

Maitasun
Ukitu
Xamur
Ukaezina.

## Nire mendekotasuna zuen nolakotasuna

Nire txaboloan
leuntasunez
masturbatzen nengoela
gauza batez
jabetu nintzen,
zuekin
larrua jo gabe
bizi nintekeela, baina ez
zuen emetasuna
jaso gabe.

## Ohaidea

Ohartzea
gure
artekoa
bakarrik
sexua
dela
eta
jakitea
ohatzea,
Gipuzkeraz
ohea
esatea,
gure
babesgunea
dela.

# Orgasmoa

Zakilaz
edo
aluaz
beste
egitea
eta
berpiztea.

## Sexua besterik ez

Neska!

Edan nirekin...
...
botila barnean
larrua jotzen amaituko dugu...
...
amaitzean
konpromisoa larrutuko dugu...
...
Zer diozu?

# Soilik erreakzio kimiko bat da

Amore!
Amore eman.

Amore!
Amore egin.

## Tabua apurtua

Lagun nire antzera gizonezkoa zara
eta badakizu emakumeak erakartzen nautela,
ala ere emeak gustuko arren,
zu arra zara
eta ederra zara.

# Trago bat

Koktel-ontzi bat hartu behar da,
gero estalkia kendu behar zaio
eta jarraian bere barnean
hurrengo osagaiak isuri behar dira:

- Masokista zurrustada.
- Sadiko zurrustada bikoitza.
- Plazer zurrustada bikoitza.
- Min zurrustada bat.
- Otzan zurrustada bat.
- Menderatzaile zurrustada bat.
- Errespetu zurrustada bikoitza.

Amaitzean koktel-ontziari estalkia ezarri behar zaio,
segidan bi eskuekin astindu eta nahasi behar da,
ondoren berriz ere estalkia kendu behar zaio
eta edukiarekin bi edalontzi bete behar dira.

TRAGO BAT NAHI ?

## Triatloia

Zure aho desiragarrian
igerian.

Zure enbor liluragarrian
oinpekoei eragiten.

Zure hanka amaiezinetan
lasterka.

Kirola egitea
onuragarria da,
zure gorputzean
izerditan aritzea
aldiz osasungarria.

# Voyeur

Uste duzu bakarrik zaudela.
Pentsa dezakezu zure biluztasuna
soilik zure begiek ikusten dutela.
Esan behar dizut, okertua zaudela.

## Zu

Aukera dudanean
jokoa gustuko izan ez arren
maitasunaren loterian
txartelak eskuratuko ditut
eta zortea badut
ezagutuko zaitut
eta benetako maitasuna,
merezitako zoriontasuna
bizituko dut.

Laukia

Lau ariketekin nere zuhaitz osoa lantzen dut

Lau mugimendurekin nere bizi eremua inguratzen dut

Lau horma artean bizirik mantentzea lortzen dut

Lau otordurekin nere sabela gozoz betetzen dut

Lau pentsamendurekin nere kaskoa orekan mantentzen dut

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*
**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi naiz**
Ibon Muñoa. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. Hainbaten artean. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
Mikel Antza / Iker Moreno. *2012.*

**Fakin xokona**
Oier Goitia. *2012.*

**Sasian barna**
Xabier Makazaga. *2012.*

**Preso nago 2**
Mikel Orbegozo. *2013.*

**$Z^2$**
Mikel Antza. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
Jokin Urain. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
Ibon Muñoa. *2014.*

**Urte ilunak**
Nelson Mandela (itzulpena: Ekaitz Sirvent). *2014.*

**Ilargiraino!**
Mikel Orbegozo. *2015.*
**Burdin elorri arantzetan**
Joseba Arregi. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Kuku erlojua**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Haizea**
Hainbat egile. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
Ibon Muñoa. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
Jexuxmari Zalakain, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
Kepa Etxebarria. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
Ibon Muñoa *2017.*

**Errezel berdeak**
Jexuxmari Zalakain. *2017.*

**Txori mezulariak**
Joseba Erostegi 'Eltzikorta' / Lorea Erostegi Fernandez. *2018.*

**Hamaika desio utopiarako**
Ibon Muñoa. *2018.*

**Egia baten egunerokoa**
Oier Goitia. *2018.*

**Gure memoria, gure historia**
Ibon Muñoa. *2019.*

**Basatza**
Hodei Ijurko Irotz. *2019.*

**Amonaren ipuin magikoak**
Joseba Erostegi / Lorea Erostegi. *2019.*



**Hodei Ijurko Irotz**
1986
Iruñea



SUIZIDIOAN
ASKOTAN
PENTSATZEN
DUT,
BAINA
BEREHALA
PENTSAMENDUAK
BERE
BURUAZ
BESTE
EGITEN
DU.



**atara**miñe
**www.literaturakoadernoak.org**